


HUMANITATE ETA
HEZKUNTZA ZIENTZIEN
FAKULTATEA

**Ikus-entzunezko komunikazio gradua**

Izenburua: *Euskarazko zinemaren historia: 1980 amaiera - 90 hasiera*

Egileak: Haizea Arizaga, Idoia Dávila, Irati Elortondo, Loinaz Elorza

Materia: Ikus-entzunezko hedabideen historia
Data: 2014ko ekainak 5



# Aurkibidea



# 1. Abstract-a

## 1.1. Laburpena

Lan akademiko honetan 1980. hamarkada amaiera eta 1990. hamarkada hasiera aztertuko dugu. Garai hartako filmik garrantzitsuetan kokatuko gara, hala nola, *Ke Arteko Egunak* (1990) eta *Offeko Maitasuna* (1992). Film hauek aztertu ahal izateko, garai hartako film kritiko eta aktoreekin kontaktatzeko aukera izan dugu, beraien ikuspuntutik informazio baliagarriago bat aurkitu nahian.

Film horietaz aparte, garai hartako egoera aztertzen saiatu gara, bai espainiar estatuko zinemarena bai frantziarrena, konparazio txiki bat egiteko ahalaginetan. Testuinguruaren barne, urte horiek ondo ulertzeko, euskararen egoera ere aztertu dugu, izan ere, euskarazko zinemari buruz ari gara hitz egiten txosten honetan. Horren arabera, film horiek izan zuten harrera ere islatu dugu.

Urte horietan produzitutako filmen informazioaz baliatu gara lana burutu ahal izateko. Horretaz aparte, zineari buruzko artikuluak ere izan ditugu oinarri 80. eta 90. hamarkadako zinemari buruzko lan akademikoa borobildu ahal izateko.

## 1.2 . Abstract

In this academic work we will discuss the basque cinema in the ending of the 80’s and the beginning of the 90’s. We will mostly mention the films *Ke Arteko Egunak* (1990) and *Offeko Maitasuna* (1992). In order to complete that, we had the chance to talk with some actors and film reviewers, so we could collect fristhand information about this era. Thereby, we have achieved much more information that we previously knew we would have.

Among other things, we tried to explain the situation of the basque cinema in those years. We also found some information about the spanish and french cinema with the goal of making a small comparison. To contextualize more, we have also analyzed the situation of the Basque language, as we are speaking about Basque Cinema in this work.

We have also collected information about the cinema in the 80’s and the 90’s to improve our paper.



## 2. Sarrera eta lanaren helburuak

Helburu nagusienen artean, jakina den bezala, 80. hamarkada amaierako eta 90. hamarkada hasieraren artean egin ziren euskarazko pelikulak aztertzea egongo da, eta bereziki *Ke arteko egunak* eta *Off-eko maitasuna*.

Aipatutako bi film luze horiei buruz ezagutzen den informazioaz gain, bakoitzaren grabazioa gutxi gorabehera nola eman zen aztertzea ere gure nahietako bat da, baita bertan agertzen diren aktoreen lanetan sakontzea. Izan ere, bi film horietan agertzen diren aktore asko garai horretako beste euskarazko filmetan parte hartu zuten.

Aktoreez gain, noski, zuzendari eta gidoilariak ditugu; hala nola Koldo Izagirre eta Antxon Ezeiza. Azken honek zeresate handia izan zuen aztergai ditugun urteetan eta bere lanean ere sakonduko dugu, baita Izagirreneran ere.

Horrez gain, urte horietako egoera politiko, soziala eta ekonomikoa aztertuko ditugu, izan ere, zinemaren industrian beti dute isla horrelako faktoreek. Euskal zinema aztergai dugunez, beraz, garrantzitsua izango da euskararen egoera aztertzea ere 80-90eko hamarkada horietan. Azkenik, honen barne gobernuak euskarazko zinema sustatzeko abian jarri zituen ekintzak aztertuko ditugu, eta ekintza hauek nola garatu ziren ere.

### 2.1. Ikerketa galderak

- Zein zen Euskal Herriaren egoera garai horretan?
- Eta euskararena?
- Nolakoa zen inguruko herrialden zinema?
- Nolakoa zen euskal zinema industrian lan egitea urte horietan?
- Zeintzuk ziren zailtasun nagusiak?
- Ze pertsonek hartu zuten parte urte hauetako zineman?
- Zein pelikula egin ziren?
- Eta nolako harrera izan zuten?



# 3. Aurrekariak eta testuingurua

## 3.1. TESTUINGURUA

Lehenik, 80ko hamarkadaren amaieratik 90ko hamarkadaren erdialdera eman zen zinemaren garapena eta egoera ulertzeko, testuinguruan kokatuko dugu, bai zinema eta euskararen egoerari dagokionez, baina baita egoera politiko eta soziala kontuan hartuta.

### 3.1.1. Testuinguru soziopolitikoa

80ko hamarkada trantsizioaren urteak izan ziren bai Espainian eta bai Hego Euskal Herrian. 1975ean, Franco hiltzearekin batera, Frankismoa amaitu zen eta demokratizaziorako bidea hasi zuen herrialdeak.

Aipatutako trantsizio horrek, beraz, lehen hauteskunde orokorrak arte iraun zuen: 1982an ospatu ziren eta Felipe González atera zen garaile. Prozesu horren urteetan Espainiako konstituzioa onartu zen, eta gainera, hainbat Autonomia Erkidego sortu ziren, horien artean Euskal Autonomia Erkidegoa zegoelarik.

Autonomia sortua zegoen, baina 1981eko otsailaren 23an estatu kolpe saiakera gertatu zen Adolfo Suárezen dimisioan. Gertaera honengatik prekarietate sentsazio handia zabaldu zen, berriro frankismo garaiko moduan egongo zirelakoan gauzak. Faktore horrek bultzatuta, eta orduko legalitate eta errekurtsoez baliatuta EITB sortu zen euskal kulturaren eta hedabideen inguruko azpiegiturak bermatzeko.

Frankismoaren zentsuraren ondoren, eta gaztelera ez ziren hizkuntzei egin zitzaien zapalketa zela eta, zineman aritzeko gogo handia zegoen, eta euskaraz gainera. Baina ez zen Euskal Herri mailan soilik gertatu gizarte jarreraren aldaketa. Espainian, eta batez ere Madrilen, “movida madrileña” izeneko “liberazio sexual, masen kontsumo eta ikus-entzunezko ikuskizuna jazo zen” (Columbia University, n.d.). “Movida” delako honi esker musikan eta zineman iraultza bat hasi zen Tequila, Leño, Pedro Almodóvar eta Fernando Truebari esker, beste artista batzuen artean. Euskal Herrian, ordea, euskaltzaletasunak indar handia hartu zuen eta hori landu ziren generoetan islatuta geratu zen.

Ikus daitekeen bezala, euskal zinemaren produkzioan, eta orokorrean produktu kultural guztietan, gorakada egoteko egoera soziopolitikoa ezin hobea zen: zentsurak amaitu ziren eta diktadurak ezarritako debeku asko ere desagertu ziren horrekin batera.

Baina egoera ekonomikoa ere aipatzekoa da, izan ere, Columbiako unibertsitatearen arabera 80ko hamarkada hazkunde ekonomiko handiko garaia izan zen. Horrez gain, urte horietan (1986an zehazki), Espainia Europar Batasunean sartu zen eta 1992an Olinpiadak ispatu ziren Barcelonan. Bi faktore horiek egoera ekonomiko mesedegarriaren isla dira.

Aipatutako faktore hauek Espainiako eta Euskal Herriko kulturan eragina izan zutenetako batzuk izan ziren eta horiei esker zen zinema modu horretakoa.

### 3.1.2. Zine espainiar eta frantsesa 80 eta 90eko hamarkadetan

Zine espainiarraren produkzioak, 1975etik aurrera eman zen demokratizazioak eta zentsuraren amaiera (1977) zela eta, gorakada izan zuen.

Zinema sustatzeko asmoaz, Zinemagintzaren Zuzenbide Orokorraren buru zen Pilar Miròk hainbat neurri hartu zituen, zinemagintza espainiarra bermatzeko. Esaterako, debutanteak babestu eta profesionalki produzitutako zinema komertziala murriztu zituen. Horrela, 1982an José Luis Garcik Volver a Empezarekin (1982) Atzerriko Filmik Hoberenaren Óscarra irabazi zuen. Hala ere, “neurri hauek laister cinema espainiarraren osasunarentzat kaltegarriak zirela baieztatu zen” (García Fernández, 2008).

> *“La equivocada política de subvenciones propiciada por Miró confirmó en poco tiempo dos de sus principales defectos: el clientelismo y la anulación de la competencia comercial. En este sentido, fue en el sector de producción en el que más señales se percibieron de la inestabilidad de la industria, pues junto a empresas bien consolidadas (…) surgieron otras muchas, la mayoría de ellas con una vida efímera y directamente ligadas a la película que presentaban a la subvención del Ministerio de Cultura.” (García Fernández, 2008)*

Horrez gain, RTVErekin partaidetza bultzatu zen, “S” klasifikazioa kendu (sexualitatea agertzen zen pelikulei ezartzen zitzaien) eta film pornografikoak legalizatu ziren.

Garai hartan komedia eta thrillerak nagusitu ziren, gai orokorra historia (Gerra Zibila eta Frankismoa) eta gizartearen isla azaltzea ziren.

Komediaren aldetik, aurreko hamarkadetako eskemak jarraitu zuen, baina frankismo garaian zuzendaritza lanetan ibili zirenak pixkanaka erretiratuz joan ziren. Honek zera ahalbidetu zuen, publikoa filmekin identifikatzeko aukera izatea, dramari leku eginez, ordura arte sufritutako errepresioa zela eta. 80ko hamarkada hasieran “komedia madrildarrak” hartu zuen ospea, eta aurrekontu oso murriztuez, Madrilgo gazte progresista ezkertiarren bizimodu bizia azaltzen zuten filma hauek. Urteak joan ahala eta aurrekontuek gorantz egiten hasi ziren ahala, komedia mota hau zabaldu eta tokiko izaera galduz joan zen. Pedro Almodóvar da hamarkada honetako zuzendari aipagarriena, batez ere bigarren erdialdean, Mujeres al borde de un ataque de nervios (1987) filmarekin zinemagintza internazionalean ezagun egin zenean, alegia.

Beste alde batetik, polizia-filmak nagusitu ziren ere bai, literatura beltzaren goieneko unearekin bat eginez, eta pelikula hauetako askok liburuetan izango dute oinarria.

Baina zine espainiarrak ez zuen ikus-entzulego zabalik, batez ere zine amerikarren gehiengoa zela eta. Kreditu Industrialeko Bankuarekin hitzarmena sinatu zuen ICAAk Instituto de la Cinematografía y de las Artes Audiovisuales), zinema nazionalaren errekuperazio plana martxan jartzeko, 7.000 milioi pezetako aurrekontuarekin. Ala eta guztiz ere, zinemaren ikus-entzulegoaren kopuruek etengabe beherantz jarraitu zuten.

Garai berbereko zine frantsesari dagokionez, Jean-Jacques Beineix izan zen Diva (1981) filmarekin aro oparoa ekarri zuen zuzendaria. Pertsonaia protagonisten alienazioaren

enfasia jartzen zen, Cinéma du look generoari hasiera emanez. Zinema mota hau narratiban zentratu beharrean, estiloari ematen zitzaion garrantzia. Beste alde batetik, protagonistatzat gazte frantses marjinatuak zituen.

Cinéma du look generoan bereizitu ziren beste bi zuzendari Luc Besson (Subway, 1985) eta Leos Carax (Mauvais Sang, 1986) izan ziren.

Zinemaren egoera, hala ere, tamalgarria zen. Espainiako zineman bezala, ikuslegoaren kopuruak jaitsi besterik ez zuen egiten:

> *“By the early 1980s, French cinema was entering another dangerous phase and drastic measures had to be taken to keep the industry afloat. In 1988 the French government introduced legislation that severely limited the number of films that could be broadcast on television (no films could be shown on the free to air channels on Wednesday, Friday or Saturday). Television became one of the main sources of revenue for French cinema, particularly the leading subscription channel Canal+, which ploughs around a fifth of its revenue back into filmmaking.” (Travers, 2012)*

90. hamarkadara aldera, Gerra Zibila eta Frankismoaren gaiak alde batera utzi, eta zuzendari berrien lanek freskotasuna eman zioten zine espainiarrari. Hamarkada hasi bezain laster, Gobernuak publiko egin zuen “Ikus-entzunezko Industria Promozionatu eta Garatzeko Plan Nazionala” testua, non zinemagintzaren etorkizunaren norakoei buruz ohartarazten zen. Baina etorkizun hau, zinean jarri beharrean arreta, telebistari eta VHSen salmentei ematen zien garrantzia eta beraz, zineak hauei egin beharko ziela aurre azaltzen zuen, zinearen ikuslego kopuru baxua zela eta:

> *“La crisis de público, aunque silenciada desde algunos ámbitos, obligó a reforzar sectores principales. Por ejemplo, el sector de distribución, en el cual declinaban las empresas independientes en beneficio de las grandes multinacionales. Y el parque de salas, cada vez más menguado, que muy pronto afrontó la reconversión de grandes espacios en minicines en el casco urbano y multicines en las áreas comerciales.” (García Fernández, 1993)*

Hala ere, espainiar produktoreek lehen bailen erantzun ez zutenez, gerora hainbat eta hainbat proiektu alde batera utzi behar izan zituzten RTVEk zinemagintzan diru-sarrerak asko murriztu baitzituen. Merkatuak atzera egin zuen oso azkar eta honek zinema kolonialista amerikarrari tokia utzi zion. Carmen Alborch ministroa zenak 1994. urtean merkatu hau berpizten saiatu zen, eta honek lau edo bost filmen erakusketa bultzatu zuen, zeinak zinemagintza espainiarraren berpizkundea bermatu zuten.

Beste alde batetik, garai honetan jadanik ibilbidea zuten zuzendariak ia ez zuten publikorik izan, eta izan bazuten polemika barne izan zen.

Zuzendari berriek estruktura narratibo eta emozionalak landu zituzten batez ere, nahiz eta komediak oraindik ere garrantzia zuen. Gerora, suspensea garatzen hasi zen Alejandro Amenábarren Tesis (1996) filmarekin batera.

Frantziako zinemagintzari itzulita, 90. hamarkadan errealismoa itzuli zen Mathieu Kassovitzen La Haine (1995) filmaren eskutik. Hala ere, influentzia gehien izan zuen zuzendaria Jean-Pierre Jeunet izan zen Delicatessen (1991) pelikularekin. Hauek biek garaiko gizarte frantsesaren arazoak aztertzen zituzten: arrazismoa, immigrazioa, gazteriaren alienazioa eta gizarte frantsesaren segmentazioa. Gai hauek erromantizismoarekin ere nahastu ziren, eta zinemagintza entretenimendua bakarrik izateari utzi zion, eta adierazpen politikoak azaltzeko metodo indartsuena bihurtu zen. Arrakasta izan zuten beste generoa komedia izan zen: Jean Renok 114 milioi ikus-entzule izan zituen bere komedia Les Visiteursekin (1993);

*"Cinema audiences reached their lowest point in France in 1992, with just 116 million tickets sold, but showed a marked recovery (to 170 million) by 1998." (Travers, 2012)*

**3.1.3. Euskararen egoera 90eko hamarkadan**

1990. hamarkadako euskararen erabileraren bi taula osatu ditugu, garai hartako egoera eta gaur egungoa alderatu ahal izateko. Argi eta garbi ikus dezakegu elebidunen kopurua bikoiztu egin dela ia adin tarte guztietan. Bestalde, erdaldunen kopurua jaitsi egin da, 65 urtetik aurrerakoen adin tarteaz aparte.

| Adina | Guztira | Elebidunak | Erdaldunak |
|---|---|---|---|
| 16-24 | 449.713 | 22,46 | 58,95 |
| 25-34 | 457.806 | 20,32 | 72,08 |
| 35-49 | 568.881 | 19,25 | 75,66 |
| 50-64 | 549.645 | 23,05 | 72,77 |
| >65 | 345.035 | 28,48 | 67,9 |

1. taula: euskara 91ean

| Adina | Guztira | Elebidunak | Erdaldunak |
|---|---|---|---|
| 16-24 | 257.692 | 46,81 | 36,12 |
| 25-34 | 445.727 | 35,94 | 43,30 |
| 35-49 | 746.803 | 16,72 | 58,83 |
| 50-64 | 604.618 | 20,48 | 67,43 |
| >65 | 594.158 | 21,36 | 70,21 |

2. taula: euskara gaur egun

1991.urtean 16-24 urte zituzten gazteen artean, elebidunak %22,46 ziren, gaur egun, berriz, bikoitza da, %46,81, hain zuzen ere. Adin tarte berdinean erdaldunak alderatuz, aldiz, %20ko jaitsiera izan du. 25-34 adin tarteei begiratuz, 1990. hamarkadan elebidunak %20 ,32 ziren, gaur egun, ordea, %35,94. Erdaldunen portzentajeari erreparatuz, %72,08tik

%43,30ra jaitsi zen.  35-49ko adin tarteei erreparatuz elebidunak %19,25 eta erdaldunak %75,66 ziren. Gaur egun, berriz, %16,72 (elebidunak) eta %58,83 (erdaldunak) izango lirateke.

50-64ko adin tarteari erreparatuz, aldaketa handirik egon ez dela konturatuko gara. Kasu honetan, 1991. urteko elebidun kopurua ez zen %25ra iristen, eta erdaldunena %72,77koa zen. Argi eta garbi ikusten da 50 urtetik aurrerako portzentajea taulei erreparatuz elebidun kopurua asko jaisten dela. Gaur egungo egoera ikusita, %20,48ko portzentajea elebidunena da eta erdaldunena %67,43. Kasu honetan elebidun kopurua apur bat jaitsi dela antzeman dezakegu.

Azkenik, 65 urtetik gorakoen adin tartea aztertzera joko dugu, elebidunen portzentajea %28,48koa izan zen 90. hamarkadan, gaur egun, ordea, %21,36koa da. Apur bat jaitsi dela ikus dezakegu. Erdaldunen portzentajeak aztertuz, aldaketa handirik egon ez dela antzeman dezakegu. 90. hamarkadatik gaur egunera arte %3ko igoera besterik egon ez delako.

## 3.2. 80 ETA 90 HAMARKADAK EUSKAL ZINEMA INDUSTRIAN

### 3.2.1. 80ko hamarkada

3.2.1.1.Harmakada hasiera eta jaurlaritzaren partehartzea

Lehen aipatu bezala, gogo handia zegoen euskal zinema industria bat sortzeko bai gobernuaren aldetik eta bai jendearen aldetik ere. Ekonomiak bultzada bat jaso zuen baina oraindik ere zaila zen pelikula bat finantzatzea.

Horregatik, Eusko Jaurlaritzak esku hartu zuen eta hainbat diru-laguntza jarri zituen martxan ekoiztetxeak laguntzeko 80ko hamarkadaren hasieran. 1981an hasi ziren zehazki, 1979ko Autonomia Estatuari esker zinemari buruzko konpetentziak euskal gobernuari pasa baitzitzaizkion, eta hauei esker aurrera atera ziren *La fuga de Segovia, Akelarre* eta *La muerte de Mikel* bezalako filmak (Azpillaga, 2004).

Laguntza hauek miloi bat pezeta ingurukoak izaten ziren normalean, lehen aipatutako La muerte de Mikelek hori jaso zuen adibidez. Baina salbuespen bat egon zen *La fuga de Segovia* pelikularekin, izan ere, 10 milioi jaso zituen  zeren “Gobernu euskaldunak bere zinemagintza politika berriaren estandarte izatea nahi zuen” (Roldán, 2008). Baina Amigok, filme honen autoreak, zioen (Roldán, 2008:428n aipatzen den bezala) ez zela politika zinematografikoa, birgizarteratze plan bat baizik.

Produkzio lanetan aipatzekoa da 1983ko La conquista de Albania. Donostiako Zinemaldian aurkeztu zen eta 100 milioi pezetako aurrekontua izan zuen. Oso garrantzitsua izan zen ere lehen aipatutako 1984ko *La muerte de Mikel*.

80ko hamarkada hasiera horretan abian jarritako produkzio lanek ahalbidetu zuten egiten ziren pelikulen kopuruak gora egitea, bai garai horretan eta bai hamarkada bukaeran

eta hurrengo hamarkadaren hasieran.
3.2.1.2. Hamarkada amaiera

80ko hamarkadaren bigarren zati honetan lehen aipatutako laguntzak martxan jarraitu zuten, zortzi urtez luzatu baitzituzten (1984tik 1991ra). Urte horietan, gainera, %100eko subentzioko ametsa lortzeko puntuan egon ziren: Eusko Jaurlaritzako %25eko laguntzari ETBko %25a gehitu zitzaion, eta baita ere %50erainokoa izan zitekeen Espainiako Kultura Ministerioarena.

Horrek euskarazko zinema bultzatu zuen, baina subentzio horiek lortzeko Jaurlaritzak baldintza batzuk ipini zituen Euskal Herriko industria indartzeko eta euskararen erabilera areagotzeko. Azpillagaren arabera (2004), egiten ziren filmetan aktoreen %75ak Euskadikoa izan behar zuen eta euskarazko bertsio bat egitera behartuta zeuden, nahiz eta askotan gero bertsio horiek ez ziren ziklo komertzialetan zabaltzen Patxi Bisquertek esandako moduan (komunikazio pertsonala, 2014ko maiatzaren 22an).

Baina Roldánen hitzetan (2008) garai produktibo honek gainbehera izan zuen 80ko hamarkadaren erdialdetik aurrera. Zinemagileen eta ekoizleen artean liskarrak sortu ziren askotan dirulaguntzak lehiaketa publikorik egin gabe ematen zirelako. 1985ean antzeko kasu bat egon zen, baina 1988an egin zen ageriagoa liskarra hiru luzemetrai guztiz subentzionatu nahi izan zituztenean, beste proiektu batzuk kontutan hartu gabe.

“Liskar horiek euskal giro zinematografikoa zapuztu zuten” (Roldán, 2008) eta hortik aurrera gauzak okerrera egin zuten. Gainera, egiten ziren pelikulen etekin ekonomikoa ez zen oso handia izan nahiz eta oso proiektu interesgarriak egon ziren eta horietako batzuek Donostiako Zinemaldiko sariak irabazi zituzten.

Laburrean, hamarkadaren bigarren erdi honetan hasieran lortutakoa galdu zen eta horrek gutxi gora behera horrela jarraitu zuen baita 90eko hamarkadan.

### 3.2.2. 90eko hamarkada

3.2.2.1. 90. hamarkada hasiera: Eusko Media

1990. urteko ekainaren 26an Eusko Jaurlaritzako Ogasun eta Finantza Departamentuak eta Kultura eta Turismo sailak dekretu baten bitartez gerora Eusko Media, S.A. izenaz ezagutuko zen Euskofilm S.A. sortu zuten, zinemagintzaren babeserako politika guztiz aldatzeko:

> *“El apoyo público a la producción audiovisual se ha venido instrumentando a través de mecanismos de ayuda a fondo perdido. Sin embargo, la Administración vasca se ha planteado la posibilidad de utilizar nuevas vías de fomento que faciliten la creación de una industria audiovisual capaz de competir en el mercado. Se trata además de rentabilidad la aplicación de fondos públicos a los fines ed promoción indicados, haciendo posible, en mayor o menor medida, la recuperación de dichos fondos mediante la participación directa en producciones audiovisuales y la adecuada distribución y venta de productos obtenidos.” (Ekainaren 26ko 174/1990 dekretua)*

Erakunde publiko honen eskuetan geratu zen ikus-entzunezko produkzio oro eta beraz, diru laguntzak alde batera utzi eta metodo menkartilistagoa hartuz. Ondorioz, lehiaketa publikorik kontuan izan gabe Eusko Jaurlaritzak koprodukzioan nahi duenean eskua sar zezakeen. 1992an prentsak “erakunde berriaren zinegile batzuen aldeko faboritismoa” salatu zuen (Carlos Roldán Larrea, 2004). Hau dela eta, euskal zinegile askok batez ere Madrilera emigratu zuten, filmeak egiteko dirulaguntzak ukatzen baitzitzaien.

3.2.2.2. 90. hamarkadako bigarren erdia: Eusko Mediaren porrota

1996. urtetik, ordea, Eusko Jaurlaritza Euskal Mediak sortu duen hondamenaz ohartuta, eusko instutituzioak Euskal Mediatik desberdindu egin zituzten, J.M Agirreren hitzetan “komertzializazioan emandako desegonkortasuna gaindintzea” ez baitzen lortu. (1996-01-22). 2001ean Rikardo Bilbaok, momentuan Eusko Jaurlaritzako Sorkuntza eta Difusio Kulturalaren Departamentuko zuzendaria zenak, zera esan zuen kanpoan zuen egoera berri honen aurrean:

> *“Hay potencial de cineastas que están en Madrid o fuera de Euskadi trabajando, provocado por unas situaciones concretas o por lo que sea. Sí, somos conscientes de eso. No sólo somos conscientes. Estamos intentando desarrollar unas líneas y programas específicos para recuperar esos nombres, por lo que suponen de referencia en el cine, u no sólo en el cine vasco sino también en el español, y utilizarlos de gancho con las nuevas generaciones de realizadores que puedan surgir”. (Bilbao, 2001)*

Beraz, modelo berria sortu beharra zegoen, euskal zinema bizirik manendu nahi bazen. Baina ez zen horrelakorik gertatu 2003. urtera arte.

Hala eta guztiz ere, 1996an garaian ez Euskal Herrian bakarrik, Espainian ere bai harrakasta handiena izan zuen filmea estreinatu zen: Airbag. Juanma Bajo Ulloa zuen zuzendari, eta Efektu Berezi onena eta Muntaia onenaren Goya sariak irabazi zituen.

## 3.3. EUSKARAZKO ZINEMA 80. HAMARKADA ERDIALDETIK 90. HAMARKADA ERDIALDERA

Lehen esandako faktoreek eraginda (frankismoaren amaiera, produkzio lanetan egindako aurrerapenak eta Jauraritzak inposatutako baldintzak) euskal zinema industriak bultzada bat jaso zuen eta horrekin batera euskarazko pelikulek presentzia irabazi zuten zinema aretoetan.

Lantzen ziren gaiak euskal kulturarekin oso lotuta egoten ziren, eta askotan gai politikoa izaten zuten, nahiz eta film batzuk saiatu ziren topiko horretatik urruntzen (Hamaseigarren Aidanez, Zergatik Panpox, Ehun metro) (Landaluze, ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzeren 23an).

Euskarazko hainbat film egin ziren 85etik 95era, nahiz eta horien artean aipatzekoak

diren Ke arteko egunak eta Offeko maitasuna.

*Kalabaza tripontzia*

Pelikula horien artean garrantzitsua izan zen Koldo Izagirrek idatzitako eta Juan Bautista Berasategik zuzendutako Kalabaza tripontzia (1985).

Bi arrazoi nagusiengatik izan zen nabarmena pelikula hau. Lehenik, euskara hutsean egindako pelikula zen, eta bestetik, euskarazko animaziozko lehenengo filma izan zen.

Arrakasta handia izan zuen gainera, eta euskarazko zinemaren pelikulen arteko harrerarik beroenetakoa jaso zuen publikoaren aldetik. Ohorezko Aipamena jaso zuen Donostiako Zinemaldian eta Espainiako Gobernuak bereziki gomendatzen zuen umeentzat (Izagirre, 1997).

*Ehun metro, Zergatik panpox eta Hamaseigarren aidanez*

Euskarazko zinemagintzaren barruan telebistan emititutako hiru erdimetrai hauek garrantzitsuak dira, izan ere, euskara bultzatzeko apustu handia egin zuten. Irati Filmeak ekoiztu zituen 1985ean eta hiruak euskaraz idatzitako eleberrietan daude oinarrituta. Bai Iro Landaluzek eta bai Patxi Bisquertek (ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzeren 22 eta 23) nabarmentzen dituzte pelikula hauek, izan ere, euskal giro horretatik aldentzen lehenetarikoak izan ziren.

- Ehun metro

Alfonso Ungríak zuzendutako film honek ETAko kide baten bizitza errepasatzen du, honek poliziatik ihes egiten duen bitartean. Honako istorioa Ramon Saizarbitoriaren eleberrian hartzen du oinarria.

Aktore protagonisten artean Patxi Bisquert dago eta baita Ramón Aguirre eta Aizpea Goenaga.

- Zergatik panpox

Zergatik panpox gehiago urruntzen da euskaldunen kezka politiko horietatik, izan ere, Arantxa Urretabizkaiaren eleberriko istorio berdina kontatzen da, eta bertan amatasuna eta feminismoa bezalako gaiak jorratzen dira.

- Hamaseigarren aidanez

Euskarazko eleberrietan oinarritutako film horietatik azkena Hamaseigarren aidanez da. Hau ere, beste biak bezala 1985ean egin zen eta Anjel Lertxundi zuen zuzendari. Izagirreren hitzetan (1997) “euskal aktoreekin

euskaraz antzezteko borondate nabarmena erakutsi zuen (pelikula) bakarra eta bikain jakin izan zuen hausten telebistako bikoizketaren mota betibera eta dramatikotasunik gabea".

Bertan, gizon batek jokoarekin dituen arazoak ikusten dira islatuta, eta baita horrek bere emaztearengan sortzen duen kezka.

*Kareletik*

Kareletik (1987) Anjel Lertxundik zuzendutako bigarren pelikula izan zen eta zuzeneko euskara landu zuen, hizkuntza honetan ikusi ahal izan zen lehen fikziozko luzemetraia izan zen, gainera.

Pelikula honetatik aurrera euskararen presentzia diglosikoa izan zen, gazteleraren ondokoa (Izagirre, 1997).

*Oraingoz izen gabe*

Urte bat beranduago, 1896ean, Jose Julian Bakedanok Oraingoz izen gabe zuzenduko zuen, eta Iro Landaluze aktoreak egin zuen lehenengo pelikula izan zen.

Ordu bateko iraupeneko film bat izan arren, garrantzitsua izan zen pelikula hau euskarazkoen artean, izan ere, euskaraz ikusi behar da nahitaez, soinua eta irudia batera grabatu baitzituzten eta ezinezkoa gertatu zen gaztelerara doblatzea (Landaluze, ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzaren 23an).

### 3.3.1. *Ke arteko egunak*

1989an grabatu zen pelikula hau eta 1990an ikusi zuen argia. Askotan aipatutako Antxon Ezeizak zuzendu zuen eta baita idatzi ere, Koldo Izagirre eta Usoa Urbietarekin batera.

Nahiz eta ibilbide komertzial xumea izan zuen, berez euskarazko zinemaren pelikularik garrantzitsuenetariko bat da. Izan ere, hizkuntza honetan grabatutako lehen pelikula izan zen Donostiako Zinemaldian parte hartzen, eta baita saria irabazi ere.

Pelikulan, Mexikora bizitzera joan zen gizon baten istorioa kontatzen da. Pedro Armendariz Jr,, da pertsonai honi bizitza ematen diona, Euskal Herrira bueltatzea erabakitzen duena 20 urteren ondoren. Bertan, gauzak bera gaztea zeneko oso desberdinak direla ikusiko du; giro politikoa, hiria eta jendea. Askotan ikusi ez duen bere alaba kartzelan egotea eta dagoeneko zaharra izateak ez diote asko laguntzen Donostiako hiri horretara adaptatzen. Kontraste hori argi eta garbi ikusten da Iro Landaluzek antzezten duen pertsonaiarekin: euskararekin eta euskal politikarekin kezkatzen den gazte bat.

Zure herrialdean arrotz izatearen itotze horretaz gain, maitasunak ere badu bere lekua istorio honetan.

Film honekin, Antxon Ezeizak "euskaraz solasturiko filme batek ez duela zertan baserri girokoa izan" erakutsi zuen Izagirreren hitzetan (1997:117). Erdarazko bertsioak

denbora gehiago egin zuen takilan, eta noski, baita diru gehiago irabazi ere, baina hala ere, euskaraz eginiko pelikula garrantzitsuenetariko bat da, nahiz eta oso ezaguna ez izan (Merikaetxebarria, ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzaren 19an). Baina ez da aipatzekoa soilik euskaraz egin direnen artean, baizik eta Euskal Herrian egin diren guztien artean, bai euskaraz eta bai erderaz.

### 3.3.2. *Offeko maitasuna*

90 hamarkada hasieran (1992) egin zen pelikula honek hainbat gauza ditu komunean lehenago aipatutako Ke arteko egunakekin, eta horien artean gidoilariak daude. Lan honetan askotan aipatu dugun Koldo Izagirre eta Usoa Agirre dira istorioaren idazleak, baina zuzendaria aldatzen da: Koldo Izagirrek hartzen du lidergoa Antxon Ezeizaren ordez.

Gobernuak bultzatutako laguntza horiei esker sortutako pelikula horietako bat da, Trenbideko Filmeak zen produkzio-etxea eta Luis Goya ere produkzio lanetan ibili zen, Antxon Ezeizaren pelikulan bezala.

Drama honetan, gainera, beste pelikulan bezela, Patxi Bisquertek parte hartzen du. Drama romantikoa da istorio hau, izan ere, Anaren istorioan oinarritzen da: bere bihotza bi gizonen artean erdibituta dago; kartzelean dagoen mutilaguna eta azken honen laguna.

Patxi Bisquertek maitasun handiz gogoratzen du pelikula hau (ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzaren 22an), izan ere, berarentzako garrantzitsua izan zen betiko gaietatik aldentzen zen pelikula hau egitea, maitasunean oinarri zuen istorio bat kontatzea.

Hala ere, pelikulak ez zuen arrakasta handirik izan merkatuan. Askok indar falta zuela zioten, eta arrazoi nagusia Koldo Izagirreren zuzendaritza zen: Izagirre idazlea zen; istorioak ondo kontatzen zituen paperean, ez pantailan.

## 3.4. GARAIKO ZINEMAGILEAK

### Angel Amigo

ETAn afiliatu bezain laster atxilotua izan zen, eta gartzelan igaro zuen denboratik sortu zen zine produktorea izateko nahia. “La fuga de Segovia”, “La conquista de Albania”, hiru film labur eta “Los cuatro viéntos” -Lauaxetari buruzko dokumentala- produzitu zituen. Kazetari lanetan hasi zen lehendabizi; 16 urterekin Radio Popular de San Sebastiánen lan egin zuen, eta gerora Unidad egunkarian ibili zen. Zeruko Argia, Punto y hora de Euskalherria eta Eginen ere egin du lan. Eta azken honetan lanean ari zen bitartean irakurri zuen gerora filmaratuko zuen liburua: Pertur y la fuga de Segovia.

Egin utzi eta sortu berria zen Eren hasi zen lanean, non Imanol Uribek proposatu zion La fuga de Segovia idazteko. Idazten bukatu zutenean ez zuten inolako dirulaguntzarik, eta

Eusko Jaurlaritzara eraman zuten proiektua; orduan izan zen produktore lanetan hasi zen unea.

Angel Amigo izan da Eusko Jaurlaritzaren aldetik diru laguntza gehien jaso dituen produktorea, eta hau salatu denean, berak zera erantzun izan du, diru laguntza publiko gehien jaso dituela bai, baina baita diru pribatu gehien lortu duena ere bai:

> *"Es indudable que soy la persona que más subvenciones ha recibido. Pero también hay que decir que soy el que más dinero no público ha encauzado para esas películas. Me han sido dadas subvenciones muy fuertes, pero ha sido para producciones aún más caras. Además, puede decirse que he recibido mucho más dinero de la Administración central que de la vasca. Tampoco es cierta la acusación de que trabajo sin riesgo. Existen dos formas de tener cubierta una película, con ventas o con subvenciones. Creo que la gente confunde lo uno con lo otro. Lo que he hecho en Ander eta Yul con TVE es en realidad una venta. Nunca he tenido una película cubierta sólo con subvenciones, sino siempre sumando subvenciones y ventas. Es decir, con mi trabajo" (Amigo, 2012).*

**Luis Goya**

Eukal zinemaren butzatzaile nagusienetakoa izan zen. 70. hamarkada bukaeran hasi zen zineman lanean, behin baino gehiagotan esan ohi zuen bezala, kasualidadez. Egin zen lehen animaziozko euskal filmean egin zuen lan, "La calabaza mágica", alegia. Antxon Ezeizaren "Ke arteko egunak" produzitu zuen eta baita Koldo Izagirreren Offeko maitasuna ere. Gainera, Astakiloen abenturak eta kalenturak telesaila ere produzitu zuen, 90. hamarkadan ETB1ten eman zena.

**Irati Filmeak**

Eusko Jaurlaritzaren laguntzaz 1985. urtean Irati Filmeak produktorak proiektu zinematografiko bat sinatu zuen; garaiko idazle euskaldunen nobelak filmaratuko ziren, euskara hutsean. Filmek, ordea, ez zuten harrakasta handirik izan batez ere distribuzioa zela eta, eta beraz, 1987an Kareletik sortu zuen, antzeko ezaugarriak zituena, baina luzeagoa zena. Hala ere, Kareletik izugarrizko porrota izan zen, eta Irati Filmeak itxi egin behar izan zen, begi bistara utziz zinemagintzak euskarak bizirauteko zuen zailtasuna.

Irati sortu zen garaia, hain zuzen, momenturik okerrena izan zen, 80. hamarkada amaieran, euskal zineak krisi latza bizi zuenean. 1987an ere bai, nolanai ere, beste film bat ko-produzitu zuen, Gran Sol, Ignacio Aldecoaren nobelaren adaptazioa, hain zuzen ere.

**Antxon Ezeiza**

Elias Querejetarekin bere lehen bi laburmetraiak zuzendu zituen, A través de San Sebastián (1960) eta A través del fútbol (1962). "Nuevo cine español" deituriko proiektu batean hartu zuen parte. Atxon eta beste garaiko zinemagile batzuk Espainiako partidu

komunistakoak ziren eta “Nuestro cine” deituriko aldizkari batean idazten zuten. Normalean Hollywoodeko zinemaren aurkako postura hartzen zuten. “Nuevo cine español” proiektuaren barruan hiru film zuzendu zituen; El próximo otoño (1963), De cuerpo presente(1965), Último encuentro (1966) eta Las secretas intenciones (1969). 1973an Latinoamerikara erbesteratu behar izan zuen politika kontuengatik. Bertan bere ideologia indartu egin zen eta beste bi film grabatu zituen Mina, viento de libertad (1976) eta El complot mongol (1977). Amnistia jaso eta gero 1977an Espainiara itzuli zen Euskal zinemaren baseak asentatzeko asmoarekin. Horretarako “Bertan filmeak” ekoitzetxea sortu zuen eta Ikuska (1978 - 1984) deituriko 20 laburmetrai ekoiztu zituen. Bere lehenengo grabatu zuen Ke arteko egunak (1989). Kritika gogorrak jaso zituen film honek zuen ikuspuntu nazionalistarengatik, baina zilarrezko kontxa irabazi zuen Donostiako zinemaldian.

**Koldo Izagirre**

Bere lehen lana zinema munduan Ikuska bat izan zen. Beranduago berriro ere Atxon Ezeizarekin lanean Ke arteko egunak (1989) filmaren gidoia idatzi zuen. Esperientzia horregatik animatuta beste gidoi bat idatzi zuen, baina kasu honetan bera zuzendu zuen filma Offeko maitasuna (1990). Film honek ez zituen kritika onak jaso ez kritika eta ez publikoaren aldetik. Ordutik ez du berriro ere filmik zuzendu, baina idatzi izan ditu marrazki bizidunetako filmen hainbat gidoi. Esan beharra dago Koldo idazlea dela eta euskal mailan garrantzitsuenetakoa da.

## 3.5 EUSKARAZKO ZINEMAREN HARRERA

Garrantzitsua da pelikula batentzako kalitate onekoa izatea, baina zinema leihatiletan ez badu arrakastarik, horrek esan nahi du jendeak ez duela ikusten.

1985etik 1995era, eta baita gaur egun ere, zaila zen zinema euskaldunarentzat pelikula arrakastatsu bat egitea. Hainbat faktorek eragiten zuten egoera hau, eta nagusienak honakoak ziren: zinema amerikarraren kalitate eta aurrekontu handiak eta euskararen egoera, ez kaskarra, baina bai asko hobetu litekeena.

Hala ere, euskarazko zinemak lortu zuen tartetxo bat egitea ikusleen artean, nahiz eta euskarazko bertsioek diru gutxiago egiten zuten takiletan (Izagirre, 1997).

### 3.5.1. Ikusleen harrera

Kontutan izanda urte horietan euskara oraindik ere berpizten ari zela, euskarazko filmek nahikoa arrakasta izan zuten publikoaren artean, batez ere horiek zabaltzeko egiten ziren ekintzei esker. Nahiz eta ziklo komertzialetan asko ez ziren ikusten, kultur etxeetan pelikula hauek zabaltzen saiatzen ziren.

Eta jendeak ez ikusi bakarrik, gustuko zituen ere Iro Landaluzek kontatzen duenaren arabera (ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzaren 23an).

### 3.5.2. Harrera kritikarien artean

Kritikoen aldetik, ordea, harrera ez zen hain beroa izan, nahiz eta Ke arteko egunak, esaterako, Donostiako Zinemaldiko Zilarrezko Kontxa irabazi zuen.

Landaluzek zioenez (ahozko komunikazioa, 2014ko maiatzaren 23an), oso kritika onak jaso zituzten (Zinemaldiaren eskutik, adibidez), baina guztiz kontrakoak ere, gaur egun El Diario Vasco-n lan egiten duen Begoña del Tesoren aldetik batez ere.

Hala ere, Anton Merikaetxebarriak, El Correo-ko zinema kritikariak (ahozko komunikazioa, 2014 maiatzaren 19an), goraipatu egiten du garai honetako zinemagintza eta batez ere urte horietako zinemagileak. Baliabide eskasekin lan bikaina egitea lortu zutela dio zinemagile eta kritikariak.

*Ke arteko egunak* filmaren kasuan, zehazki, oso kritikatua izan zen bertako giro politikoa (Izagirre, 1997), eta garai horretan euskaraz aritzen zen zinema kritikari bakarrak zera zioen:

> “Filmeak iritziak piztea baina gehiago, kritiko ezagunak beren satorzuloetatik ateratzea lortu zuen. Orain arte zine baskoari lotua ibili den jendeak, bat batean hemengo zinea txarra dela deskubritu du, ondoren Ezeizaren filmea kategori berdinean sartuz. Egun batetik bestera zine baskoa behin eta berriro goraipatu dutenak kritiko zorrotzak bilakatu dira. Beraiek jakingo dute aldaketa horren arrazoia, baina alderdikeriaren usaina nabarmenegia izan da”.
> J.J. Iribar (Izagirre, 1997:117)

*Offeko maitasuna* ere indarrik ez duela dio Landaluzek (ahozko komunikazioa, 2014 maiatzaren 23an), ez filma txarra delako, baizik eta Koldo Izagirre idazlea zelako (oso ona bere esanetan), ez zinema zuzendaria.

Orokorrean, zinema euskaldunak indarrik ez zuela esaten da, eta ez zituela istorioak kalitatez kontatzen, nahiz eta badiren goraipatuak izan diren salbuespenak.



## 4. Metodologia

Lan akademiko hau burutu ahal izateko, hiru elkarrizketa egin ditugu. Elkarrizketa guztietan taldekide guztiek hartu dugu parte. Lehen elkarrizketa **Anton Merikaetxebarria**ri egin genion maiatzaren 19an, astelehena. Telefono bidez kontaktatu genuen berarekin eta Bilbon buru genuen elkarrizketa. Sony A1 eta Canon 600d kamerak erabili genituen grabaketa egiteko, baita solapako mikrofonoak eta Zoom ahots grabagailua ere. Elkarrizketa egin baino lehenago gidoiak prestatu genituen, hona hemen lehenengoa:

*Ibilbide profesionala (10 minutu)*

- Zer bultzatu zizun zine kritikaria izatea?
- Gogoratzen al duzu kritikatu zenuen lehen filma?
- Pentsatu al duzu noizbait film batean parte hartzea?

*80ko hamarkada (15 minutu)*

- Euskal zinemaren kalitatean gainbehera egon zela diote 85tik aurrera, zein da zure iritzia horren inguruan?
- Zein izan zen harrera beste kritikarien artean?
- Eta publikoaren artean?
- Filmek zuten aurrekontua kontutan izanda, onak ala txarrak ziren?
- Zein zen hauen aspekturik ahulena?
- Eta indartsuena?
- Zein da garai honetako zure filmik gustukoena euskaraz?
- Kalitate aldetik, espainiar eta frantziar filmekin alderatuta, zein zen euskal filmen egoera?
- Jendeak jarrera ezberdina azaltzen al zuen euskarazko filmekin?

*90eko hamarkada (10 minutu)*

- Desberdintasunik nabari al da hamarkada batetik bestera?
- Estiloan aldaketarik egon al zen?
- Hobekuntzarik egon al zen beste herrialde batzuekin alderatuta?
- 5 urte hauetako zein filmek izan zuten harrera onena publikoaren artean?

Etorkizuna (10 minutu)

- Nola ikusten duzu euskal zinemaren etorkizuna?
- Zure ustez gaur egungo zinemak zer desberdintasun ditu 80. eta 90. hamarkadako zinemarekin alderatuz?

Anton Merikaetxeberriari elkarrizketa egin ondoren, ostegunean, hilak 21, Patxi Bisquerti telefonoz deitu genion Galizian bizi baita. Elkarrizketa grabatu ahal izateko ahots grabagailu domestiko bat erabili genuen. Ordu batez egon ginen berarekin hizketan.

Azken elkarrizketa Iro Landaluzeri egin genion eta horretarako Abadiñora joan ginen hurrengo egunean, ostirala maiatzak 22an, hain zuzen ere. Elkarrizketa hauek burutzeko ere,

gidoiak prestatu genituen:

- Ibilbide profesionala (10 minutu)
- Zein izan zen zure lehenengo kontaktua zinemarekin?
- Nola lortu zenuen bertan murgiltzea?
- Pentsatu al zenuen noizbait zineman lan egitea?
- Beharrezkoa iruditu al zaizu euskaraz aritzea beti?

*Euskal zinemaren egoera bertan lanean hasi zenean (15 minutu)*

- 80eko hamarkada horretan nolakoa zen euskal zinemaren egoera?
- Eta euskarazko zinemarena zehazki?
- Jendeak ikusten al zituen pelikula hauek?
- 
- Non ikusi ahal izaten ziren? Telebistan soilik? Zineman ere?
- Itzultzen ziren pelikulak euskarara?

*Euskal zinema 80ko hamarkadan (25 minutu)*

- Zein izan zen aldaketa nagusia garai honetan? Zergatik egon zen produkzioan gorakada hori?
- Ze puntutaraino izan zen lagungarria jaurlaritzaren ekimena?
- Gobernu zentralak eskaintzen zuen finantzaketarik?
- Zein baliabide tekniko zenituzten eskura?
- Zein ziren zailtasun nagusiak?
- Eta zailtasun berezirik bazegoen euskaraz egiteagatik?
- Zein zen euskal zinemaren egoera zinema espainiar eta frantsesarekin alderatuta?
- Ze genero lantzen ziren gehien?
- Zergatik gertatu zen hamarkadako bigarren erdiko gainbehera hori?
- Zein izan zen euskarazko filmik garrantzitsuena?

*Euskal zinema 90eko hamarkadan (10 minutu)*

- Antzematen al da aldaketarik hamarkada batetik bestera?
- 80.hamarkadarekin alderatuz errazagoa edo zailagoa al zen film baten produkzioa?
- Euskararen aldetik erraztasun gehiago bazegoen hizkuntza honetan jarduteko?
- Zein desberdintasun zeuden publikoaren harreran hizkuntzaren arabera?

*Ke arteko egunak (15 minutu)*

- Nolakoa izan zen grabazioa?
- Zenbat denbora hartu zuen grabazioak?
- Non egin zen film hau?
- Ze kostu izan zuen?
- Ekonomikoki etekinik atera al zenioten?
- Zein erantzun jaso zuen filmak publikoaren aldetik?
- Eta kritikoen aldetik?
- Eragin handia izan zuen Donostiako Zinemaldiko saria irabazteak?

- Euskal zinemak orokorrean atera al zuen onurarik egoera horretatik?

*Offeko maitasuna (10 minutu) (Patxi Bisquerti bakarrik)*

- Nolakoa izan zen grabazioa?
- Zein izan zen aurrekontua?
- Ze etekin ekonomiko izan zituen?
- Ke arteko egunak filmarekin alderatuz nolakoa izan zen publikoaren jarrera? Etekin ekonomiko gehiago edo gutxiago izan al zuen?
- Zein filmetan izan zenituen zailtasun gehiago?
- Orokorrean gustura egin zenuen lan?
- Errekurtso gehiago izanez gero emaitza hobea izango litzatekeela uste al duzu?

*Harrera (10-15 minutu)*

- Oso desberdina zen publikoaren jarrera euskarazko filmen aurrean?
- Kontuan izanda zenbat jendek zekien euskara garai horretan, publiko handia zuten film hauek?
- Kritikoek ze iritzi zuten film hauen inguruan?
- Gazteleraz balira jarrera bestelakoa izango zela iruditzen zaizu?

*Etorkizuna (5 minutu)*

- Nola ikusten duzu euskal zinemaren etorkizuna?
- Gaur egungo zinemak zer desberdintasun ditu 80. eta 90. hamarkadako zinemarekin alderatuz?



## 5. Emaitzak

Lan akademiko honetan 80. eta 90. hamarkadako euskal zineman sakondu ahal izateko hiru elkarrizketa burutu genituen. Hasieran erabakitako elkarrizketatuak ez badira ere, espero genuen informazioa lortu genuen. Zine kritikari bati elkarrizketa egitea bururatu zitzaigun eta Anton Merikaetxeberriarekin kontaktatzea lortu genuen. Hainbat gauza kontatu zizkigun, baina batez ere ilusioa eta gogo handia ziren gehien erabiltzen zituen hitzak. Bere ustetan garai hartan zegoen gauzarik garrantzitsuena zelako.

> *''Gu garai horretan gaur egun egiten den bezala, zine komertziala egiten saiatzen ginen. Ez zen berdina ez zegoelako sistema digitalik, dena analogikoa zen. Horregatik gidoi bat idatzi behar zen, ekoizle etxe batean aurkeztu, finantziazio bat lortu…gero ekipazioa lortu behar zen, analogikoa; travellingak, kamerak… Makinaria handia behar zen hura martxan jartzeko. Adibidez, laburmetrai bat egiteko 20-30 pertsona behar ziren, eta gainera dena kanpotik ekarri behar zen; Euskadin ez zegoen horrelako sistema teknikarik, ez kamera, ez soinu, ez distribuzio''.*

Euskal zinemak zuen ahultasuna aipatu genionean distribuzioa zela esan zigun. Euskal Telebista oraindik sortzeko prozesuan baitzegoen eta garai hartan ere arazo politiko handiak zeudelako.

''Distribuzioa eta erakusketa, zineman eta telebistan ere bai. Hori zen arazoa, produktua bukatu eta gero erakustea: soinua jarri, muntatu… gainera Madrilera joan behar zen errebelatzeko, hemen ez baitzegoen horrelakorik''.

Garai hartan egin ziren Ikuskak oso garrantzitsuak izan zirela aipatu zigun, zinema egiteko betiko era horrekin hautsi zuten eta errealitate zinematografiko naziolak eta sozial bat sortzeko era izan zelako, nahiz eta bakoitzaren pentsaera desberdina izan.

1985. urtetik aurrera euskal zinemaren kalitatean gainbehera bat egon zen eta Antonek azaldu zizkigun zergatirik nagusienak.

''Garai horretan zorroztasun handia zegoen. Ez zegoen ia baliabiderik eta hasieratik sortzen zenuen zerbait zen. Talde handi bat ginen, oso ondo antolatuta eta elkarri oso lotua, eta talde horren guztiaren antolatzailea Antxon Ezeiza izan zen. Zinema industria txiki hori sortu zuten zinemagileen buru zen nolabait esanda, dokumentalak eta gai sozial eta politikoak zituzten pelikulen sortzailea. Diru laguntzak os garrantzitsuak ziren. Pelikula sinple baten aurrekontua 3 milioikoa izaten da gutxienez, eta horrek asko baldintzatzen dizu gidoia idazterako orduan''.

Eusko Jaurlaritzak garai hartan subentzioak ematen zituen baina nahiko murriztuak ziren, garai hartako eta gaur eguneko euskal zinemaren kalitateari buruz hitz egin zigun Antonek.

*''Kontuan izan ikuspuntu zinematografikotik, garai hartan jende bikaina zegoen; sekulako produktoreak, PPGA adibidez, zine komertziala egiten zuela batez ere baina publizitatea ere bai… garai hartan publizitate asko egiten zen. Antxon Ezeiza, Cuerpo Presenteren zuzendaria, non Antonio Galesek lan egin zuen, zuri beltzeko pelikulak Luis Cuadradoren argazkigintzarekin, zein argazkilari handia zen. Egiazko talentuarekin lan egiten zen; baliabide murriztuak izan arren, sorkuntza asko zegoen garai hartan. Orain, uste dut, diru gehiago izan arren talentu gutxiago dagoela".*

Euskarazko zinema egiteko euskaraz egitea hobeto dagoela ere aipatu zigun, baina, hori bai, garestiagoa da eta etekin gutxiago ateratzeko arriskua egoten da. Hizkuntzak garrantzia handia zeukala azpimarratu zuen, batez ere.

1990. hamarkadara pasatuz, aldaketa teknikoak egon zirela aipatu zigun, baita adierazpen askatasunaren aldetik ere.

*''70-80ko hamarkadan kontu handiz ibili behar zen, eta arazo asko izaten ziren. Gidoia aurkeztu behar zen, eta zerbait aldatzen bazenuen gerora, izugarrizko iskanbila sortzen zen. Bai, adierazpen askatasunean aldaketa handia egon zen. Alde teknikotik, esan dudan bezala, digitalizazioa etorri zen, eta orain mugikorrean eta guzti ikus ditzakezu filmak. Baina sentsibilitate estatikoa galdu dela iruditzen zait. Lehen plano*

*bat errodatzean, argiak non jotzen zuen eta dena ikusten genuen, ea pertsonaiarekin bat zetorren. Baina orain, gutxienez, praktikoagoa da".*

Gure bigarren elkarrizketatua Patxi Bisquert aktorea izan zen. Telefonoz deitu genion eta ordu betez egon ginen berarekin hizketan. Detaile handiz kontatu zizkigun berak bizitako hamarkadak. Bere lehen kontaktua zinemarekin profesionalki La Fuga de Segovia (1981) filmean izan zen baina ez zuen inoiz aktore izango zenik imajinatu.
Bere ikuspuntutik, 1980. hamarkadako zinema nahiko eskasa eta txikia zen. Baina eginiko filmak arrakastatsuak izan zirela ere aipatu zigun, jende asko joaten baitzen ikustera.

*''Ikuska dokumentalak garrantzia handia izan zuten, asko egin ziren; Antxon Ezeizak, Imanol Uribek, Montxo Armendarizek…egin zituzten, zuzendari askok. Euskarazko lehen fikziozko istorioak 85 inguruan egingo ziren, hiru film egin ziren "Ehun metro", "Zergatik Panpox" eta "Hamaseigarrenean Aidanez", Anjel Lertxundik zuzendutakoa. Zuzenean euskaraz egin ziren lehenengo fikziozko istorioak izan ziren horiek".*

Patxiren hitzetan, filmak euskarara ere itzultzen ziren garai hartan, euskal jaurlaritzaren subentzioari esker kultura sailak euskarazko kopia bat eskatzen zuen beti, Orduan nahiz eta gazteleraz errodatu itzuli egiten ziren film guztiak. Baina euskarazko bertsioa ikastoletarako eta euskaltegietarako erabiltzen zen bakarrik. Komertzialki gaztelaniazko bertsioa erabiltzen zen beti.

Patxik ere 1980. hamarkadako produkzioaren aldaketaz mintzatu zen eta haren gorakadaz hitz egin zigun. Baita gaur egungo euskal zinemaz ere.

*''Egoera politikoa berezia zen nolabait. Mundu ilun batetik gentozen, frankismotik, Eusko Jaurlaritza osatu zen eta zinemari bultzada bat ematen hasi ziren subentzioekin. Kausa handia ematen zuen, baina gero 4-5 pelikula egingo ziren urtean, luzemetraiak ez ziren gehiegi egiten, gaur egun bezala. Bestalde, urte horietako pelikulak nahiko arrakasta izan zuten; bai "Tasio", bai "La muerte de Mikel" eta beste batzuek ondo funtzionatu zuten leihatilan. Euskal zinemaren "boom"-a eman zen, baina hala nolakoa izan zen, mantsoa izan zen eta gaur egun ere antzeko gabiltza. Ez da industria handia sortu: ekoiztetxe txiki batzuk badaude gehienbat telebistari begira eta noizbehinka luzemetrai bat egiten da".*

Eusko jaurlaritzaren diru laguntzak oso garrantzitsuak zirela aipatu zigun, pelikula baten aurrekontuaren %40a diru publikoa izaten zen. Orduan, garrantzi handia zuen. Diru kopuru hori zuzenean kultura sailetik eta ETBtik zetorren. Horrek asko laguntzen zuen batez ere aurrekontua osatzeko kontuan.

Normalean GZ, Kultura sailak, ETB eta RTVE izaten ziren diru laguntzak eskaintzen zituenak. Hauen laguntza gabe, lehen eta orain pelikula bat aurrera eramatea oso zaila zela aipatu zigun. Baliabide teknikoei erreparatuz Euskal Herrian jende gutxi zegoela esan zigun, gehienak Madrildik etortzen ziren.

*''Oroitzen dut Segobiako Ihesa, Akelarre, Konkista, parte handiena bai dekorazioa, makillajea, elektrikoak, gehienak Madrilgo enpresetatik zetozen. Urteak pasa ahala,*

*Eskolak sortzen hasi ziren heinean, hemen bertan, teknikoak bertakoak sartzen hasi ziren, eta poliki poliki teknikoak laguntzaile moduan sartzen, nagusitu ziren arte".*

Zinema euskalduna, espainiarra eta frantziarraren arteko desberdintasunak ea ikusten zituen galdetu genion. Patxik, zinema hizkuntza unibertsala zela azpimarratu zuen. ''Ez dut uste desberdintasunik zegoenik. Zinea, azkenean, hizkuntz unibertsala da, eta berdin dio hemen edo hor grabatu''.

Patxi Bisquertek *Ke Arteko Egunak* (1990) filmean paper txiki bat egin zuen, errodajea Zarautzen izan zela esan zigun eta Pedro Armendarizekin egin zuen lan. Filmaren aurrekontuari erreparatuz, gutxi gora behera 150-200 milioi pezetakoa izan zela esan zigun. Garai hartako aurrekontua horrelakoa zen.

*Offeko Maitasuna* (1992) filmari buruz ere galdetu genion. Kasu honetan, askoz hobeto gogoratzen zuen film hau, eginiko papera handiagoa izan zelako. Bere ustetan, film hauek harrera ona izan zuten. Orokorrean euskal filmen harrera nolakoa zen galdetu genionean harrera desberdina ez dutela aipatu zigun.

*''Pelikula hori maitasun handiz gogoratzen dut. Caceresen eta Euskal Herrian grabatu genuen. Ez zuen horrenbesteko harrera izan publikoaren artean. Koldo Izagirre nahiko erreta dago pelikula horrekin. Bere garaian oso ausarta ere bai, ukitzen zuen gaia dela eta. Film horretako langile guztiak euskaldunak ziren. Pelikula horretan, publizitatean ez zen ezer gastatu eta horrek ez zuen leihatilan lagundu".*

Koldo Izagirre eta Antxon Ezeizari buruz hitz egin zigun Patxik, eta beraiekin oso gustura egon zela aipatu zuen.

*''Oso komodoa zen beraiekin lan egitea. Garbia da, gauzak zuzen esaten ditu, nola ikusten duen berak pertsonaia, sekuentziei ze matiz eman eta bere ikuspegia ere argi eta garbi azaltzen du. Aktoreei asko laguntzen die, entseguak egiterako orduan asko laguntzen zuen. Nire esperientzia beraiekin oso ona izan zen".*

Azkenik, 1980. eta 1990. hamarkadaren arteko ezberdintasunak zeintzuk ziren galdetu genionean, desberdintasun handirik ez dagoela aipatu zigun, hori bai, gaur egun euskarazko film gehiago egiten direla esan zuen.

Azken elkarrizketa Iro Landaluzeri egin genion. Irok Ke Arteko Egunak filmean parte hartu zuen 1990. urtean eta garai hartako film eta egoeraren inguruko hainbat ezaugarri aipatu zizkigun. Irok ez du inoiz aktore izateko intentziorik izan, kasualitatez hasi zen. Filmetan euskaraz mintzatzea errazago egiten zaio, gaztelera oraindik nahiko arrotza baita beretzat. 1980. hamarkadako zinemaren egoera nolakoa zen galdetu genion.

*''80.hamarkadan dena euskaltzaletasunaren inguruan zebilen. Euskal zinema eta Euskal Telebista hasi berri zeuden eta orduan itxaropen handia genuen. Proiektu onak zeuden: gogoratzen dut 86 urtean Donostiako Zinemaldian "Oraingoz izen gabe" emititu zuten eta prentsaurreko batean orduan Kultura sailean zegoen Joseba Arregik esan zuen ordutik aurrera urtean 3 edo 4 pelikula egingo zirela euskara hutsez. Baina hori ez zen bete, dena gezurra izan zen. Baina guk bagenuen gogoa euskarazko*

*zinema industria sortzeko, eta hori Euskal Telebistara bideratu zen".*

Film horiek ikusten zirela aipatu zigun, Eusko Jaurlaritzak pelikulak herriz herri kultur etxeetan zabaltzeko proiektu bat baitzuen. Euskaraz egindako pelikulak gutxi ziren, eta jende asko joaten zen horregatik. Baliabide teknikoei buruz aldetu genionean hauxe esan zigun:

*''Garai hartakoak oraingoarekin konparatuz, askoz ere oinarrizkoagoak ziren eta oso jende gutxi zegoen. Soinu burua, argiztapena eta hauek kanpotik ekarri behar ziren. Nik adibidez, egin nuen lehenengo pelikula, Oraingoz izen gabe, kamara eta soinugilea Ingalaterratik ekarri genituen, hemen ez zegoelako. Gero, Catalunyan grabatu nuenean, talde hura ere espainiarra zen, Ke arteko Egunaken bezala".*

Film bat produzitzerako orduan zailtasunik handiena dirua zela aipatu zigun, behar den moduko film bat egiteko diru asko behar baita. Zailtasunen haritik jarraituz, filmak euskaraz egiterako orduan zailtasun berezirik ez zegoela ere esan zigun. Bestalde, euskaldun mundua oso txikia denez gaztelaniaz egiteak etekin handiagoa lortzen du.

Irori ere euskal, espainiar eta frantziar zinemaren arteko desberdintasunaren inguruan mintzatu ginen. Kasu honetan, Irok, erantzun desberdin bat eman zigun.
''Neurria zen desberdina. Uste dut kalitatea, herri handiagoak diren heinean, kalitatea ere hobea daukate, normala da. Aktoreak askoz landuagoak dira, eta teknikoak ere bai, eta gero beren historiala oso luzea da. Zinemagintza euskalduna oso ibilbide gutxiko industria da. Normala besteak gu baino zerbait hobeak izatea. Baina hemen ere talentu onak egon izan dira. Patxi Bisquert, adibidez, aktore ona zen''

Genero desberdin asko landu zirela aipatu zigun, politikoaz aparte. Bere hitzetan uste dut gai asko jorratu zirela politika ukitu gabe.

1980. hamarkadatik 1990. hamarkadarako saltoari buruz hitz egiterako orduan, Iro Landaluzeren hitzetan, Kultur Saileko Joseba Arregik kalte handia egin zion Euskal Zinemari.

*''1990tik aurrera pelikula gutxiago egin ziren. Administrazioaren aldetik ez zen apusturik egin euskal zinemaren alde. Gutxiago egiten zen, ez zegoen pelikularik eta asko igerri zen. Kalte asko egin zuen pertsona, Joseba Arregi izan zen, Kultura sailean ibili zena. Hitzeman zuena bete izan balu, nik uste beste gauza bat izango zela gaur egun euskal zinema".*

*Ke Arteko Egunak* filmari buruz galdetu genion, eta Irok Zilarreko Kontxa irabazi zutela aipatu zigun.

*''Nik esango nuke pelikularik garrantzitsuenetarikoa dela, euskaraz egin direnetatik. Niri gehien gustatzen zaidana euskaraz egin direnetatik, Oraingoz izen gabe da. Niretzat, bai istorio bera, La intrusa de Borges idazle hegoamerikarraren istorio laburraren adaptazioa, Bernardo Atxagak idatzitako gidoiarekin eta gero guk, bi anaien papela egin genuenok, Felix Arkadazok eta biok gure euskarara egokitu genuen. Eta uste dut indar berezi bat eman ziola pelikulari. Gainera euskaraz egin genuen, zuzenean, eta uste dut ondo atera zitzaigula. Baina ordubeteko filma denez, nahiz eta*

*ETBk hainbat igorri izan, ez duela izan ibilbide handirik zineman''.*

Grabazioaren inguruan ere informazio asko eman zigun. Kasu honetan, Irok filma Donostian grabatu zuen.

*''Grabazioa ona izan zen. Donostia aldean grabatu genuen, eta bi hilabete inguru egon ginen grabatzen. 100 milioi pezeta inguruko kostua izan zuen eta ekoizlea Trenbideko Filmak izan zen, bertan zegoen Koldo Izagirre''.*

*Ke Arteko Egunak* (1990) filmak kritika gogorrak jaso zituen, nahiz eta Zilarrezko Kontxa jaso izan. Bere ustez ondo funtzionatu zuen bertako beste filmekin alderatuz.
Baina zine kritikoen harrera oso ondo gogoratzen du Irok.

*''Zilarrezko Kontxa lortu genuen, baina oso kritika txarrak jaso genituen. Kritiko batzuk alde zeuden eta beste batzuk guztiz kontra. Kontuan hartu behar da zuzendaria Antxon Ezeiza zela, eta estatu mailan zinemari buruz gehien zekien gizona zen eta asko dakien baten pelikulak ulertzeko pertsona batzuei, ez zaie iristen eta nire ustez hori gertatu zen. Adibidez Begoña del Tesok egin zuen kritika; nik ikusi nuen zinera sartzen eta hamar minutura irten egin zen, eta oso kritika txarra egin zuen. Kritikez aparte eragin handirik ere ez zen egon. Uste dut saria lortzeak ez zuela indar askorik lortu etorkizunari begiratuz. Normalean sari bat irabazterakoan leihatilan boom-a edo sortzen da, baina kasu honetan ez zen horrelakorik gertatu''.*

Azkenik, euskal zinemaren etorkizunari buruz galdetu genion eta gaur egun erabiltzen ditugun edozein baliabide teknikorekin zinema sortzen dela esan zigun.

*''Nire ustez, gaur egun gazteei berdin zaie ze kamera mota erabiltzen dituzten, mugikorrak edota kamera profesionalak. Ez dakit zeri deitzen dioten gaur zinea, film bat edozein lekutan ikus dezakezu gaur egun, mugikorrean, telebistan... Ondo argiztatutako film bat ezin da mugikor baten ikusi, pantaila handi batean ikusi behar da. Baina, istorio on bat ondo kontatuta, beti izango baitu arrakasta''.*



## 6. Ondorioak

Amaierara iritsita, lan akademikoa burutzeko erabilitako informazioaren azterketari esker ikasitakoarekin hainbat ondorio atera ditugu euskal zinema industria eta euskarazko pelikulen inguruan.

Elkarrizketak eta orrialde batzuk aurrerago azaldutako informazioa bilatzen hasi baino lehen, euskal zinemaren inguruan genuen jakintza urria zen. 1980. eta 1990. hamarkadetako oso film gutxi ezagutzen genituen. Hau horrela, hainbat zuzendari, ekoizte etxe eta film berri ezagutzeko aukera izan dugu. Ke Arteko Egunak filma ikusi ahal izan genuen eta lan akademikoa egiterako orduan erraza egin zaigu honen inguruan idaztea. Ezagutza urri hori izateaz ateratzen dugu lehen ondorioa: euskal zinemak ez ditu klasiko asko beste industria batzuen moduan, ez dago mundu guztiak ezagutzen duen pelikularik, edo ez gutxienez guri egokitutako hamarkadetan.

Zinemagileak, ordea, beste kontu bat dira. Antxon Ezeiza aski ezaguna da gure artean esaterako, baita Patxi Bisquert aktorea eta hainbat zinema argazkilari. Izan ere, irakurri dugunari esker eta elkarrizketatuek kontatu digutenaren arabera zinemagileak oso onak ziren Euskal Herrian garai horretan, nahiz eta askotan baliabideak zirela eta ez zuten aukera handia izaten talentu hori erakusteko. Horren ondorioz askok kanpoan bilatzen zuten lana, bai Espainian eta bai beste herrialde batzuetan, hala nola Estatu Batuak. Beste industria batzuk probetxu handia atera dute euskal zinemagileetatik. Hala ere, aipatu beharra dago ikusi dugula amateur asko bazegoela ere, aktoreen artean batez ere (Iro Landaluze adibide dugularik.

Euskararen egoera kontuan izanda, hala ere, ulertzekoa da arrakasta falta ere. Gaur egun bezala erdaldunak gehiengoa ziren, baina egoera okerragoa zen. Hortik ondorioztatu daiteke euskarazko pelikulak publiko gutxi izatea normala dela, baina erdarakoen kasuan ez luke berdina pasa beharko. Euskal zinemaren gunerik indartsuena talentua da, ahulena, ordea, distribuzio falta da. Horregatik, baliabide izugarriak zituen zinema amerikarrarekin konpetitzea oso zaila gertatzen zitzaion 80ko hamarkada horretan, eta ez soilik euskal zinema industriak.

Laburrean, esan daiteke talentua ona zela, baina euskarazko zinemak konpondu beharreko akats handi bat zuen. Pelikula bat oso ona izan daiteke, baina inorrek ez badu ikusten ez du ezertarako balio.



## 7. Bibliografia


AROA, V. (2007). “Historia del cine español años 80”. *Historia del cine español años 80.* [Blog] 2007ko abenduak 18. Eskuragarri: http://vickyaroa.blogspot.com.es/

AZPILLAGA, P. (2004). “Euskal Herriko zinemagintzaren oinarri ekonomikoak”. *Argia aldizkaria,* 2004, 144. alea, 85-101 orr.

COLUMBIA UNIVERSITY. (n.d.). “El siglo XX en España: Guerra Civil, franquismo y postfranquismo”. *Culturas hispánicas II: de la Ilustración a la época contemporánea.* Eskuragarri: http://www.columbia.edu/cu/spanish/courses/spanish3350/05sigloxxespana/contexto.html

EUSTAT. (2011). Evolución de la población de 16 y más años de Euskal Herria por territorio y grupo de edad según competencia lingüística. 1991-2011.http://www.eustat.es/elem/ele0009500/tbl0009564_c.html#axzz33exjL5e

FERNÁNDEZ, J. (2012). “Euskal Zinema”. *Etxepare*. Donostia. Eskuragarri: http://files.eke.org/liburutegia/euskal_zinema.pdf

GARAIKOETXEA, E. (2004). “Euskal zinemaren historia txikia”. *Argia aldizkaria*. 2004-09-12. Eskuragarri: http://www.argia.com/argia-astekaria/1957/euskal-zinemaren-historia-txikia

GARCÍA FERNÁNDEZ, E.C. (2008). “Historia del cine español IX: años 80”. *Cine y letras*. Eskuragarri: http://www.cineyletras.es/cine-clasico/historia-del-cine-espanol-ix-anos-80.html

GUTIÉRREZ, J.M. (1994). “Euskal Zinea, Cine Vasco”. *Eusko Media*. Donostia. Eskuragarri: http://www.euskomedia.org/PDFAnlt/riev/39/39277295.pdf

IZAGIRRE, K. (1997). “Zinez”. *Gure zinemaren historia petrala*. Susa argitaletxea, 115-119 orr.

MACÍAS, J. (2010). “Cine vasco: ¿Un debate cerrado?”. *EHU*. Eskuragarri: http://www.ehu.es/ojs/index.php/Zer/article/view/2342/1942

MARIN, M. (2006). “Luis Goya, pionero productor del cine vasco”. *El Pais*. 2006-09-28. Eskuragarri: http://elpais.com/diario/2006/09/28/agenda/1159394407_850215.html

MINISTERIO DE EDUCACIÓN, CULTURA Y DEPORTE. (n.d). Breve historia del cine español. Eskuragarri: http://www.mecd.gob.es/dms-static/0099e3e0-5360-4e46-8a8b-cc2fe67132cb/consejerias-exteriores/brasil/recursosvirtuales/temasymateriales/cineespanol.pdf

MINISTERIO DE EDUCACIÓN. (n.d). Media Cine- 3.12 El cine de los 90. Eskuragarri: http://recursos.cnice.mec.es/media/cine/bloque3/pag12.html

ROLDÁN LARRETA, C. (2004). “Paisaje después de la batalla”. *Una aproximación al cine vasco contemporáneo*. http://www.euskomedia.org/PDFAnlt/riev/49/49551595.pdf

ROLDÁN LARRETA, C. (1998). Irati Filmak: un proyecto singular en el cine de Euskal Herria. Eskuragarri: http://www.vianayborgia.es/bibliotecaPDFs/FOLI-0078-0000-0341-0356.pdf

ROLDÁN LARRETA, C. (2008). El cine vasco en la década de los ochenta: Auge y caída de un fenómeno artístico singular. Iruña: BIBLID [1137-4403 (2008), 26; 425-440]

PULVER, A. (2011). “A short history of French cinema”. *The Guardian*. Eskuragarri: http://www.theguardian.com/film/2011/mar/22/french-cinema-short-history

TORRES, S. (1989). “Ángel Amigo, joven pionero del cine vasco”. *El Pais*. Eskuragarri: http://elpais.com/diario/1989/01/26/cultura/601772407_850215.html

TRAVERS, J. (2012). History of French Cinema. French Films. Eskuragarri: http://frenchfilms.info/articles/French_Cinema_History.html

CINEMA OF FRANCE. Wikipedian. 2014ko maiatzaren 25an editatuta. Eskuragarri: http://en.wikipedia.org/wiki/Cinema_of_france

CINEMA DU LOOK. Wikipedian. 2013ko abuztuaren 20an editatuta. Eskuragarri: http://en.wikipedia.org/wiki/Cin%C3%A9ma_du_look